# BERTZO BERRIYAK

1

Azpeitira dirate
berzuetara deitu
gizon balientia
naute eskojitu
buelta bat egitia
nuen disponitu
¡ay! pensamentu oyek
artu ez banitu
gutxi suponitu
ez gera unitu
utzik naiz gelditu
talentubak aitu
enfermedade txarrak
bajatu gaitu,

2

D'Abadi jaun ori
francesa da berez
ni berriz española
pobria nerez
premiyuak partitzen
ditut kantidadez
Azpeitira juan nintzan
bizirik dolorez
bajuba kolorez
ezkaza balorez
Pello degu Juez
nombratu legez
ni utzik geldituba
portatu gabez

3

Premiyua eman zioten
Pello-errotari
ez dan gauzik ezaten
ez gerade ari
zerbait luzatutzeko
bere lagunari
Juan Jose Alcain edo
Jose Benardori
gezurra ugari
zakatu dit neri
trizte Udarregui
dezkubritu bedi
azko partitu gabe
jauna daori.

4

Orduban Azpeitiyan
zan alkate jaunak
partitu omen zizkan
bere ordenak
ango Tribunal edo
komiziyo onak
artako nonbratuta
zeuzkaten gizonak
guztizko personak
ala dira zonak
pruebak emanak
orren faltak danak
edozein gàuza libre
lotzatzen ez danak

5

Erriko Alkatiak
itz oyek ezan da
errespetatu gabe
zertako juan da
Tribunala ere berriz
artako zan da
orrek guziyai alde
pillua izan da
berak artu prenda
publikora erten da
zufritutzen lan da
txarra da demanda
etzaizkiyo urritu
neri emanda.

6

Alkatiak jarriya
zan kondiziyua
lagunairi egiteko
partiziyua
eman biar danian
txarra zoziyua
bota ta kunplitzenda
obligaziyua
orren aziyua
¡Ay! zer leziyua
dala traiziyua
conparaziyua
Judazek izan zuen
ofiziyua

7

Giza arte txarrera
ez nitzan etorri
bolzan diruba ondotxo
ez banu jarri
D'Abadik premiyua
eman arren orri
etziyon zentimorik
Alkaiñi ekarri
artutzeko larri
berak gorde zarri
artu eta korri
izan banitz urri
ibili bear nuen
dezonragarri.

8

Cantidade guziya
jaso du urretan
eun franko justu dira
lege zarretan
ez gerade metitu
enplio txarretan
propinak partitzeko
kale basterretan
nago bildurretan
ori indarretan
ez dala zorretan
dabil gezurretan
aberastu biar du
modu orretan.

9

Premio ori artu ez
galanki gastatu
sentiduak nai ditut
manifestatu
Pelloren aziyuak
etzaizkit gustatu
bozt duro utzi ditut
kotxe ta ostatu
zertako estutu
ez gera ajustatu
gezurra prestatu
diruba arrastatu
conzienziya ondo
errejistatu.

10

Azpeitira juan nitzan
ni zori gaitzian
gizon onratu batek
deitu baitzian
batzuetan oñez ta
bestian kotxian
zorrikan utzi gabe
zartu naiz etxian
gizona zartzian
premiyua atzian
au gogoratzian
pena biotzian
lasaituko gerade
kobratutzian.

11

Usurbillen dema bat
aurten da jokatu
an alkar billatzia
zaigu tokatu
azkoz nayagonuen
ez banu topatu
gesurrak esan eta
egiyak ukatu
saltza ezin bukatu
izketan nekatu
kazik da pekatu
ezin debekatu
ojala ez bagendun
itzik trukatu.

12

Aziera izan zan
Pelloren aotikan
zer notizi nituen
Azpeititikan
nik pakia desio
nere partetikan
azko kejatu gabe
asi zan platikan
jaikirik zutikan
eso gogotikan
bere gramatikan
sendo politikan
orri ajola diyo
guregatikan.

13

Orduko itzak gatik
egin diyot kazo
errespeto pizkabat
biagu preziso
nai dubena esatia
ez baita alkazo
bere mantxak bota nai
zizkiran akazo
kopak zarri jazo
zurrut kuriozo
jarri animozo
ni ez nago gozo
zergatik juzgatu nau
gesurti ozo

14

Astiazuko erriko
Don Pedro Elicegi
gezurrez dabillela
Juan Jozeri
ez diyo begiratzen
zenbaitek ezeri
preztubak inzultatzen
gizona ez ari
tentatu zat neri
Alkai udarregui
egiyaz da ari
publikatu bedi
ezberak dauzkan tatxak
bota besteri.

15

Pello dezafiyoka
azpaldi aziya
zertan egingo zayo
menospreziya
ori da gazterikan
ondo ikaziya
berak markatu zuen
probinzi guziya
etzan itzuziya
daukat ikuziya
onrak mereziya
izandu graziya
amaika duro eder
irabaziya.

16

Ozo trebia dago
kantuzko lanian
orlako gutxi da
gaurko egunian
gogor egiten niyon
gaste giñanian
obeditu diyogu
etzi degunian
zazoya juanian
baju gaudenian
orgullo onian
farra aldamenian
Juan Jose Udarregui
galdu danian.

17

Lau probinzi oyetan
ori da Jueza
talentuba duenak
biar grandeza
beti artako dago
estu eta preza
kantuz etxeratzen du
zenbait intereza
jan da edan lasa
egun onak pasa
ez dago eskasa
eman diyot traza
titulo eder ori
konzerba beza.

18

Orain ogei bat urte
ninzan indarrian
tabernan bezelaze
ote larrian
Pellorekin ere bai
patxara ederrian
allegatu ezkero
egin biarrian
teatro zarrian
ez leku txarrian
jende azko urrian
naiko bildurrian
beti etzan atzegin
nere urrian.

19

Nik orduban banuen
gizon baten lana
berak ere badaki
ona ninzana
sarritan juntatutzen
giñan alkargana
juzgatzen zuten zeiñ sanà
balientia sana
basuen afana
klarua kampana
berekin daukana
ni denbora juana
ezagututzen gaitu
baju gaudena.

20

Onrak merezi ditu
Azpeitiko erriyak
igual ango jende
maitagarriyak
premiyuak ziraden
ara etorriyak
D'Abadi Jaun orrek
kotxez ekarriyak
zer urre gorriyak
gu diruz urriyak
bajutxo jarriyak
gaude igarriyak
orra Udarregi zarrak
bertzo berriyak.